# DONOSTIACO GAZTEAC

## LANGUILLE MAISUEN FESTA

### 1843 GARREN URTECO ASTELENIOTE EGÜERDIAN.

## IBIL BERDIÑA.

1

Iñauterian oitu becela
Donostiaco gazteac
Marcha cantari batzuec, eta
Soñu arequin besteac:
Datoz plazaco dantza lecura
Gaur esquer onez beteac
Bacoitza bere bear gayaquin
Eracustera nequeac.

2

Zortzi languille maisu jaquintsun,
Andreac aldamenean,
Garbi, egoqui apaindurican
Jazcay onenac soñean:
Pozes, cantari gogoarequin
Daude nor bere lanean,
Eta sarritan dantza oi dira
Bearric ez dutenean.

## BELAUN CHINGOA.

Nere languille maiteac, zar eta gazteac,
Aditu nequeac,
Pena naibagueac,
Igaro ditugunac, guizon cital dollorrac
Aisa sinisturic,
Gaude damuturic:
Ontzietan joanguiñan Montevideorá,
Galzera demborá,
Alperqueriará:
Goseac erdi illac, ez eceren jabe,
Lan ta dirubague
An egon guerade.

## PISPILIN.

1.

Dendari eta Zapataria
Berac nor baldin badirá
Eguitecoa badute eta
Chit ongui bicico dirá;
Pispilin, pozpolin, plazara dambolin
Goseac ilco ez dirá.

2.

Arotzac eta Picharguilleac
Oi dute lana ugarí
Bearra gogoz eguiñarequin
Cobru ematen lanarí:
Pispilin, pozpolin, plazara dambolin
Izanditezque chit ongui.

3.

Cupelaguille, Perratzalleac
Bearra urri bacana,
Biac gogoa on dute baña,
Nai duten diña ez lana:
Pispilin, pozpolin, plazara dambolin
Beti escasa jornala.

4.

Pacinguille ta Chorrotzallea
Lana eguiten oituac
Atzerricoac izanacatic
Bearreraco cinzoac:
Pispilin, pozpolin, plazara dambolin
Biac guizoncho prestuac.

# ARDO CHURRUT.

**Senarrác.**

Beti bearguiñean
Neque azpián
Bururic jaso gabe
Nere bicián:
Iñauterián
Acheren aldicho bat
Det Donostián,
Eguncho bián
Goiz arratsalde eta
Egüerdián,
Plaza berrián
Egunaz eta gabaz
Ordu guztian.

**Emazteac.**

Ezcondu ninzan eta
Ez det damuríc
Ezin autuco nuén
Senar oberíc,
Leyalagoríc
Berarequin bici naiz
Pozez beteríc,
Penac azturíc,
Ezdu nere guizonac
Bere pareríc
Bear guilleríc
Iñorc icusi ezdu
Bencho gueldiríc.

## BAI, BAI, BAI.

1.

Nagusi, echecoandre,
Eta mirabeac
Plazan daude, ichiric
Echeco ateac.
Bai, bai, bai, festetan
Zar eta gazteac.

2.

Egunero badatoz
Gende campocoac
Icustera eralde (*a*)
Plaza berricoac
Bai, bai bai, festacho
Iñautericoac.

(*a*) Eralde *Comparsa.*

## ZORZICOA.

1.

Festaric bearbada
Bego Donostiá,
Beticoa du fama
Ondo mereciá:
Bestetan ez becela
Emen gazteriá
Amaren sabeletic
Dator icasiá.

2.

Donostiarrac dute
Auquera, doaiá
Urtero asmatzeco
Festa bat berriá:
Beren moduchoa dá
Guztiz egoquiá
Cer nai gauzetaraco
Arquitzen du gayá.

3.

Aurten iñaute festac
Eder eta lucé
Otsailla beingoan
Oso bete duté;
Iñoiz ezdet icusi
Iñon onembesté
Eta guerora ere
Ez icusi usté.

4.

San Vicente goizean
Bostac jó etzuten
Atabal damboliñac
Nengüen enzuten:
Ordu bian arguiric
Ez nuen icusten,
Logale nintzan baña
Etziraten uzten.

5.

Ill onen asieran
Lenengo jayean
Egun sentiarequin
Nentzala oyean: 12
Iñudeac aurraquin
Zebiltzan calean
Ta gocho zaltzallea
Beraquin batean.

6.

Beste cembait badira
Arrezquerocoac
Festa eder egoqui
Donostiacoac:
Guero estudiante
Eta igitoac,
Zortzi maisu languille
Guerade gaurcoac.

Autor: Dn. José Vicente de Echagaray.